PROBLEMA:

A eta B bi populaziotan ezaugarri jakin batekin jaio diren haurren kopurua aztertu nahi dugu. A populazioan azken 300 jaiotzak hartu diran kontuan, eta jaiotza hauetatik 45etan ezaugarri jakin hori azaltzen zela ikusi da. B populazioan, aldiz, azken 350 jaiotzak izan dira kontuan, eta kasu honetan jaiotza hauetatik 57tan azaldu da aipatutako ezaugarria.

C indizea honela definitu dugu: A → 45/300 B → 57/350

$$C = \left( \frac{X_A - \mu_A}{\sigma_A} \right)^2 + \left( \frac{X_B - \mu_B}{\sigma_B} \right)^2$$

Haur batek ezaugarri jakin hori edukitzeko probabilitatea 0,15 dela jakinik, zein izango da C indizea behatutako $X_A$ eta $X_B$ balioekin lortutako indizea baino handiagoa izateko probabilitatea?